Egoki da, bai, eta zuzen bidezko eta sal-ba-ga-rri, nonahi eta beti
guk Zuri eskerrak e - mo - te - a, Jauna, Aita guztiz santu, Jainko
ahalguztidun betiko Ar-tzain ho-rri. San-ti - a - gok, testigu ku-
tunak, iragarri eban zure Semearen heriotzatik eta biztueratik da-
to-rren e-rrei-nu-a, eta bera izan zan apostoluetan le-he-nen-go-a
Jaunaren kali-za e-da-ten; haren gida-ri-tzaz eta zain-da-ri-tzaz
gordetzen da sinismena gure he-rri - e - tan, eta zabaltzen lur o-
so-an; be-ra da-be lagun erromes do-a-ze-nek, azkenean Zuga-
na hel - du ar - te, Jesu Kristo gure Jauna - ren bi-tar - tez.
Ho-rre - gai - tik, Jauna, aingeru guztie - kin ba-te-ra orain eta beti
go-res-ten zai - tu - gu, fede apalez a - bes-ten deu-tsu - gu - la:

**SANTIAGO, APOSTOLUA**
**Bilboko Gotzain-aulkiko Zaindaria**

**Sarrera-oharra**

Egun on, senideok. Aurrez-aurre jarriko ete doguz, ba, Compostelako Santiago eta Loiolako Ignazio, ha galiziarrena dala esanez, eta gurea Ignazio dala?

Erlijiokerietan bagabilz, Jesusen jarraitzaile izatea zer dan ulertu ez dogulako da. Apostoluei ere gatx egin jaken, etekinen bila ebizelako. Baina bai ulertu ebela Jesus ezagutzera emotean euren bizitza arriskuan jarteraino.

Izan daiguzala apostoluak eredu, eta indartu daiala Santiagok gure sinismen motela.

**Sarrera-abestia**

**BIHOTZ BATEZ ALKARTURIK**
Zugana gatoz, Jauna; Zugana gatoz, Jauna.
Emoiguzu zure argi, grazi ta maitasuna:
entzun, arren, Jauna.

**Damu-otoitza**

† Senideok: gure garra eta egingurea onerako barik sarritan banantzeko, zatiketarako, norbere probetxurako erabilten dogu, Jainkoaren nahieratik alboratuta. Damuturik autortu daigun gure pekatua:

—Jesus Jauna, zure jarraitzailetzat gizon sutsuak auke<u>ra</u>tzen dozuzana. *Erruki, Jauna!*

—Jesus Jauna, gizakion sugarra gorrototik askatu eta maitasun-sugar <u>bi</u>hurtzen dozuna. *Kristo, erruki!*

—Jesus Jauna, zure ikasle gartsuak, bulartsuak eta atxaki bakoak <u>na</u>hi gaituzuna. *Erruki, Jauna!*

**Aintza**

**OTOITZA**

Jainko ahalguztidun betikoa,
Santiagoren odol-isurtzeaz sagaratu zenduzan
Apostoluen lehenengo ebanjelizatze-lanak;
egizu, zure Eleizeak,
haren zaindaritzaz eten barik indarbarriturik,
sendo iraun dagiala haren testigantzaz
eta gure herriek leial jarraitu deioela Kristori
gizaldien azkeneraino.

**Jaunartzean**

**Jauna dot Artzain, ez dot izango nik goserik**
**hark emongo deust zer-jan onik.**

—Neu naz zerutik lurrera jatsi dan ogia
Aitak danori eskeinia…

—Nire gorputza egiz dozue janaria
ta nire odola edaria…

—Ogi hau jaten dauana beti da biziko,
hilterik ez dau ikusiko…

**Jaunartze ondorengo otoitza**

Eskerrak emoten deutsuguz, Jauna,
Santiago apostolu eta gure zaindariaren festaburua ospatzean
pozik hartu doguzan dohai santuakaitik;
bera laguntzaile dogula,
zaindu gaizuz beti zeure babespean.
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

**Azkenerako**

Santiagoren garrak ikutu bagaitu, Jesusen jarraitzaile eta testigu sutsu urtengo dogu.

Gurea ez da inor menperatzea eta gaitzestea (kondenatzea), danen zerbitzari izatea baino, batez ere beharrizanean diranena. Hauxe da, Jesusen ustez, gizakiak egin daiken gauzarik ederrena.

**Bedeinkazino nagusia**

Oinarritzat Apostoluak emon deutsuezan Jainkoak
bedeinkatu zaizala, Santiago Apostolu santuaren otoitzari esker.
R/. Amen.

Apostoluen irakaspena eta jarraibide ederra
emon deutsuen Jaunak
egin zaiezala, euren laguntzaz,
mundu guztiarentzat egiaren autorle.
R/. Amen.



**R/. Ene Jainko, aitatu zagiezala herriek,**
**aitatu zagiezala herri guztiek.**

Erru*ki* bekigu Jainkoa eta bedeinkatu gagizala,
ager*tu* deigula aurpegi argia,
eza*gu*tu dagien munduan zure bidea,
nazi*no* guztietan Zugandiko salbazinoa. R/.

Poztu beitez kantari nazinoak,
zuzentasunez dozuz-eta gobernatzen herriak
eta gidatzen munduan nazinoak. R/.

Lurrak bere uzta emon dau,
Jainkoak, gure Jainkoak, bedeinkatzen gaitu.
Bedeinkatu gagizala Jainkoak,
izan deiola begirune mundu osoak. R/.

**II. Irakurgaia** (2 Ko 4, 7-15)

Lagundu deigula irakurgai honek gure sinismena aintzat hartzen, zaintzen eta garatzen; ez egun baten izan geiken saria itxaroteko, eguneroko bizitzarako baino.

*Jesusen heriotza daroagu geugan.*

**San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako bigarren epistolatik**

Senideok: Altxor baliotsu hau buztinezko ontzian daroagu, argi agertu dadin honenbesteko indarra Jainkoagandik datorrela, eta ez gugandik. Alde guztietatik estutzen gaitue, baina zapaltzen ez; larri gagoz, baina ustea galduta ez; erasopean bai, baina eskutik itzita ez; lurrera botatzen gaitue, baina hondatzen ez; edonon eta beti Jesusen heriotza daroagu geugan, Jesusen bizia be gugan agertu dadin. Holan, gugan heriotzak dihardu lanean; zuengan, barriz, biziak.

Bizi garan bitartean, beti heriotzara garoez Jesusegaitik, gure izate hilkor honetan Jesusen bizia be agertu dadin.

Hau dino Liburu Santuak: «Sinistu neban, eta horregaitik hitz egin neban». Guk be, sinismen-espiritu bera dogula, sinisten dogu eta horregaitik hitz egiten dogu, jakinik, Jesus Jauna biztu dauanak biztuko gaituala geu be Jesusegaz, eta haren ondoan ipiniko gaituala zuekin batera. Hau guztia zuen onerako da, Jainkoaren dohaia askorengana zabaltzean, esker ona be ugaritu dadin, Jainkoaren aintzarako.

Jaunak esana.

zeure zerbitzari I. gure Aita Santua, I. gure Gotzaina,
beste gotzain eta eleizgizon(-emakume) guztiak
eta zeurea dozun herri osoa.

**Entzun**, bihotz onez,
zeure aurrera deitu dozun familia honen otoitzak;
Aita guztiz ona, erakarri Zeugana
mundu zabalean banaturik dabiltzan zeure seme-alabak.

† **Hildako** gure senideak (…/..),
eta mundu honetatik Zurekin adiskide joan diran guztiak,
hartu egizuz bihotz onez zeure zeruan;
geuk ere sinisten dogu
zure aintzaren zorion betea izango dogula
betiko, eurekin batean,
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez;
beronen eskuz emoten deutsazuz
ondasun guztiak munduari.

**Honen bitartez**, honekin eta honengan,
Zuri, Jainko Aita ahalguztidun horri,
Espiritu Santuarekin batean,
ospe eta aintza guztia
gizaldi eta gizaldi guztietan.
AMEN.

**Salbatzaileak** agindu eta irakatsiari jarraituz,
bildur barik esan dagigun:

Gure Aita, zeruetan zarana:
santu izan bedi zure izena,
etor bedi zure erreinua,
egin bedi zure nahia
zeruan bezala lurrean ere.
Emoiguzu gaur egun honetako ogia;
parkatu gure zorrak,
geuk ere geure zordunei parkatzen deutsegun ezkero,
ez eiguzu itzi tentazinoan jausten,
baina atara gagizuz gatxetik.



—Sufritzen dagozan herrialdeen alde: gorrotoak erre ez daizan, eta herrialde aberatsen laguntza ta zorren parkamena lortu daiezan, *eskatzen deutsugu, Jauna*.
—Sinismena ospatzeko abaderik ez dauken eleiz alkarteen alde: eleiz alkarte izateaz jabetu daitezan, eta alkartzea bilatu daien, *eskatzen deutsugu, Jauna*.
—Santiagoren omenez alkartu garanon alde: Jaunaren jarraitzaile eta haren barri-emoile gartsu izatea bilatu daigun, atxaki, bildur eta lotsa guztien gainetik, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

† Gure otoitzak Jesus Jaunak irakatsitakoan indar hartu daian, esan daigun gogotsu, Jesusek berak irakatsitako otoitza:

**Oparien gaineko otoitza**

Jauna, Kristoren kaliza edaten
Apostoluetan lehenengoa Santiago izatea nahi izan zenduan;
haren festaburua ospatzean garbitu gaizuz
zeure Semearen nekaldiko bateo salbagarriaz,
sakrifizio atsegingarria eskeini deizugun.
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

**Prefazioa**

V /. Jauna zuekin. — R /. Eta zure espirituarekin.
V /. Gora bihotzak. — R /. Jaunagan daukaguz.
V /. Eskerrak Jaungoiko gure Jaunari. — R /. Egoki da eta zuzen.

Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta salbagarri,
nonahi eta beti guk Zuri eskerrak emotea,
Jauna, Aita guztiz santu,
Jainko ahalguztidun, **be**tiko Artzain horri.

Santiagok, testigu kutunak, iragarri eban
zure Semearen heriotzatik eta biztueratik datorren erreinua,
eta bera izan zan Apostoluetan lehenengoa
Jaunaren kaliza edaten;________
haren gidaritzaz eta zaindaritzaz
gordetzen da sinismena gure herrietan,
eta zabaltzen lur osoan;___
bera dabe lagun erromes doazenek,
azkenean Zeugana heldu arte,
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.____

Zurekin eta Espiritu Santuarekin batean
Jainko eta errege bizi da-eta gizaldi eta gizaldietan.

**I. Irakurgaia** (Eg 4, 33; 5, 12. 27-33; 12, 2)

Ez ziran eskolatuak, ez jakintsuak; baina bai ulertu ebela Jesusen inguruan euren zeregina zein zan, eta zer aukeratu eben. Izan daiguzan eredu.

*Herodes erregeak ezpataz hilarazo eban Santiago.*

**Apostoluen Eginak liburutik**

Egun hareetan, Apostoluek aginpide handiz egiten eben Jesus Jaunaren biztueraren autormena, eta jenteak oso estimatuak ebazan guztiak. Mirari eta egintza harrigarri asko jazotzen zan herrian apostoluen eskuz.

Batzar Nagusiaren aurrera ekarri ebezan apostoluak, eta abade nagusiak esan eutsen: «Ez geuntsuen zorrotz agindu ez irakasteko Jesusen izenean? Zuek, barriz, Jerusalem osoa bete dozue zeuen irakaspenez; gainera, gizon horren heriotzaren erantzukizuna geuri leporatu nahi deuskuzue».

Pedrok eta beste apostoluek erantzun eben: «Jainkoaren esana egin behar da lehenengo, ez gizakiena. Gure asaben Jainkoak biztu egin dau zuek egur batetik dingilizka hil zenduen Jesus. Jainkoak goratu egin dau bere eskumaz, Buruzagi eta Salbatzaile eginez, Israeli bihotz-barritzea eta pekatuen parkamena emoteko. Geu gara gauza honeen testigu, geu eta esaneko jakozanei Jainkoak emoten deutsen Espiritu Santua».

Erantzun honek euren onetik atara ebazan batzarkideak, eta hil egin nahi ebezan apostoluak. Eta Herodes erregeak ezpataz hilarazo eban Joanen anaia Santiago.

Jaunak esana.

**Erantzun-salmoa (**Sal 67 [66], 2-3. 5. 7-8 (R/. 4)**)**

Izadi osoagaz eta herrialde guztiekaz bat egiten dau salmogileak Jainkoaren goralpenetan. Egin daigun beragaz bat geuk ere Jainkoa goresteko.






Apostoluen irakaspenez fedea sendotu deutsuen Jaunak
lagundu deizuela betiko etxera heltzen.
R/. Amen.

Bedeinkatu zagiezala Jaungoiko ahalguztidunak:
Aitak, eta Semeak, ✠ eta Espiritu Santuak.
R/. Amen.

## Azkenerako

**ALKARTUTA GOAZEN AURRERA KANTARI,**
**BIHOTZAK ZABALDUZ BETIKO POZARI (bir).**

*Maitasun ta zuzentasunez dezagun*
*lortu anaien askatasun,*
*Badator-eta Jaunaren betiko egun.*
*Hor dugu distiratsu egunsentiko argitasun.*



**R/. Aleluia.**

**V/.** Gure Eleizearen izar dirdaitsu, Santiago apostolua:
bakean dago zure gorputza,
gure artean bizi da zure aintza. R/.

**Ebanjelioa** (Mt 20, 20-28)

Ibili geintekez Jesusen inguruan etekinak eskuratzearren. Jaunak aurpegira botako deusku hori, eta bide zuzena erakutsiko: zerbitzea. Egin deiogun harrera on Aleluia abestuz, zutunik.

*Nire kalizatik, bai, edango dozue.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

Aldi haretan, zebedeotarren ama hurreratu jakon Jesusi bere semeakaz eta aurrean ahuspeztu, eskari bat egiteko. Jesusek itaundu eutson: «Zer gura dozu?» Eta harek: «Agindu egizu nire seme bi honeek, jesarri daitezala zure erreinuan bata zure eskuman eta bestea zure ezkerrean».

Eta Jesusek: «Ez dakizue zer eskatzen dozuen. Gauza ete zarie Nik edan behar dodan kalizatik edateko?» Erantzun eutsoen: «Bai, gauza gara!» Jesusek orduan: «Nire kalizatik edan, bai, edango dozue; baina nire ezker-eskuman jesartze hori, ez dago nire esku inori emotea; nire Aitak norentzat prestatua dauan, hari emongo jako».

Beste hamarrak, hori entzutean, hasarretu-hasarretu egin ziran anaia biakaz. Baina Jesusek dei egin eta esan eutsen: «Badakizue herrietako agintariek menpean hartzen dituela herriak, eta handikiek euren agintea ezartzen deutsiela. Ez bedi izan holan zuen artean; ezpada ze, zuen artean handi izan gura dauana izan bedi zuen zerbitzari, eta zuen artean lehenengo izan gura dauana izan daitela zuen morroi. Ze, Gizonaren Semea be ez da etorri zerbidua izatera, zerbitzari izatera baino, eta bere bizia askoren ordainsari emotera».

Jaunak esana.

## ESKARIAK

† Jainkoaren hitz salbagarri eta su-emoiletik sortu daitezala gure eskariak, uste osoa Jainkoagan jarrita:

—Eleizearen alde: bai bere artzainengan, eta baita bere seme-alaba guztiengan ere, gero ta argiago erakutsi daian sinismenaren ondasuna, *eskatzen deutsugu, Jauna.*



**Atara gagizuz**, Jauna, gatx guztietatik;
emoiguzu bakea gure egunotan;
zure errukiari esker
pekatutik garbi bizi gaitezan
eta estualdietan sendo,
betiko zorionaren itxaropenean,
Jesu Kristo gure salbatzailea
noiz etorriko dan zain gagozala.

Zeurea dozu erregetza,
zeureak ospe eta indarra orain eta beti.

**Jesu Kristo** gure Jauna, Zeuk esana da Apostoluei:
«Bakea izten deutsuet, neure bakea emoten»:
Begira zeure Eleizearen sinismenari eta ez gure pekatuei
eta, zeure gogoa danez,
emoiozu Eleizeari bakea, emon batasuna.
Errege bizi zara-eta gizaldi eta gizaldietan.
Amen.

**Jaunaren** bakea beti zuekin.
Eta zure espirituarekin.

**Emoiozue** bakea alkarri.

**Jaungoikoaren Bildotsa**, Zeuk kentzen dozu munduko
pekatua: erruki, Jauna.
...emoiguzu bakea.

**Hona hemen** Jaungoikoaren Bildotsa,
hona munduko pekatua kentzen dauana.
Zoriontsuak Jaunaren mahaira deituak!

Jauna, ni ez naz inor Zu nire etxean sartzeko;
baina esaizu hitz bat eta osatuko naz.

Kristoren Gorputza.
Amen.

Horregaitik, Jauna, aingeru guztiekin batean
orain eta beti goresten zaitugu,
fede apalez [esaten] **a**besten deutsugula:

Santu, Santu, Santua...

**Santu zara**, bai, Jauna,
eta diran guztiek emoten deutsue
behar dan gorespena.
Zure Seme Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez
eta Espiritu Santuaren indarrez,
Zeuk biziazoten dituzu guztiak eta santutzen
eta Zeuk diharduzu beti eta beti zeure herria batzen,
eguzkialde batetik besteraino
opari garbia eskeini dakizun.

**Apalik, beraz**, Jauna, eskatzen deutsugu:
egin daizuzala santu,
zeure Espirituaren indarrez,
oparitako ekarri ditugun ogi-ardao honeek,
zure Seme Jesu Kristo gure Jaunaren
Gorputz eta @ Odol egin daitezan,
misterio honeek
berak agindurik egiten ditugun ezkero.

**Berak**, saldu eben gau haretan,
ogia hartu eta, Zuri eskerrak emonez,
bedeinkatu eban,
zatitu eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE ETA JAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE GORPUTZA DA-ETA,
ZUENTZAT EMONGO DANA.

Era berean, afalondoan, kaliza harturik,
Zuri eskerrak emonez, bedeinkatu eban
eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE ETA EDAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE ODOLAREN KALIZA DA-ETA,



ITUN BARRI ETA BETIKOAREN ODOLA,
ZUENTZAT ETA ASKORENTZAT
PEKATUAK PARKATZEKO ISURIKO DANA.
EGIZUE HAU NEURE OROIGARRI.

**Hau da sinismenaren misterioa.**

Hil eta biztu zarala, Jauna,
Zu barriz etorri arte,
hau dogu, hau, barri ona!

**Horregaitik**, Jauna, guk,
zure Semearen nekaldi salbagarria
eta hilen artetik biztea
eta zeruratze miragarria gogoratuz,
haren azken etorrera itxaroten dogula,
Zuri eskerrak emoteko eskeintzen deutsugu
sakrifizio bizi eta santu hau.

**Begira, Jauna**, zeure Eleizearen eskeintza honi;
ikusi eskeintza honetan
Zurekin baketu gaituan Jesu Kristoren oparia;
egizu, Jauna,
zure Semearen Gorputza eta Odola hartzen ditugunok,
Espiritu Santuaz beterik,
Jesu Kristogan gorputz bat eta espiritu bat izan gaitezala.

**Berak egin gaizala** Zuretzat betiko opari,
zure aukeratuekin zerua jaritsi daigun:
lehenengo, Maria guztiz dohatsua,
Jainkoaren Ama beti Birjinarekin,
haren senar Jose santuarekin,
Santiago eta beste zure Apostoluekin,
martiri eta santu guztiekin;
badakigu, honeen bitartez
zure laguntza izango doguna nonahi eta beti.

**Gu Zurekin** baketzen gaituan opari hau izan bedi, Jauna,
mundu guztiarentzat bake eta salbamen.

**Mundu honetako** ibilaldian,
bete egizu sinismenez eta maitasunez zeure Eleizea: